# URTEAN ZEHARREKO XV. DOMEKA

## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Euriak ernaldu egiten dau lurra.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 55, 10-11

Honan berba egiten dau Jaunak:
«Euria eta edurra zerutik jaisten dira
eta ez dira barriro hara bihurtzen
lurra ase, ernaldu eta erne barik,
ereiteko hazia eta jateko ogia emon dagizan;
halan egingo dau nire ahotik urtendako hitzak be:
ez da Nigana hutsik bihurtuko,
egingo dau, ostera, Nik nahi dodana
eta beteko Nik ezarritako helburua».

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 65 [64], 10abcd. 10e-11. 12-13. 14 (R/. Lk 8, 8)

R/. **Lur onean jausi zan haziak ugari emon eban frutua.**

V/. Zeuk dozu lurra zaintzen, urez asetzen
eta oparo aberasten.
Urez gainezka doa zeruko ubidea;
Zeuk emoten deutsazu gizakiari gari-

garaua. R/.

V/. Zeuk prestatzen lurra honan:
erretenak ureztatu, mokilak bardindu,
euri-zaparradez harrotu, kimuak bedeinkatu. R/.

V/. Zeure ondasunez burutzen dozu urtea,
ugaritasuna dariela dagoz zure bideak.
Heze eta ugari dagoz landa zabalak,
alaitasunez apaindurik mendi-ertzak. R/.

V/. Zelaiak artaldez jantzi dira, ibarrak gariz estaldu,
poz-oihuz eta kantari. R/.

## II. Irakurgaia

*Izadia bera be gogo biziz dago, zain-zain, Jainkoak noiz agertuko bere seme-alaba izatea zer dan.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 8, 18-23

Senideok: Nire eretxian, oraingo neke-lanak ezer gitxi dira gero gugan azalduko dan aintzaren aldean. Izadia bera be gogo biziz dago, zain-zain, Jainkoak noiz agertuko bere seme-alaba izatea zer dan. Izadiak bere benetako helburua galduta izan arren –ez bere gogoz, horretara behartu ebanagaitik

baino–, badau itxaropena, esklabotzatik eta hondamenetik askatua izan eta Jainkoaren seme-alaben aintzazko askatasunean parte izateko.

Badakigu, jakin be, izadi osoa erdiminetan aieneka dagoana orain arte. Eta ha ez ezik, gu geu be bai: Espiritua lehen dohai lez hartu dogunok aieneka gagoz geure barruan, Jainkoak noiz askatuko eta bere seme-alaba noiz egingo gaituan zain.

Jaunak esana.

Aleluia

R/. **Aleluia.**

V/. Hazia Jainkoaren hitza da;
ereilea, barriz, Kristo;
honi entzuten deutsanak betiko bizia izango dau. R/.

## EBANJELIOA

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Urten eban ereileak ereitera.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 13, 1-23

Egun haretan, Jesus etxetik urten eta itsasertzean jesarri zan. Eta hainbeste jente batu jakonez inguruan, txalupa

batera igon eta bertan jarri zan. Jente-taldea, barriz, hondartzan egoan. Gauza asko esan eutsen, parabola bidez berba eginez:

«Behin baten, urten eban ereileak hazia ereiten. Ereitean, garau batzuk bide-bazterrean jausi ziran, eta txoriek etorri eta jan egin ebezan. Beste hazi batzuk harri artean jausi ziran, lur handirik ez zan lekuan, eta, aixaleko lurra izanik, behingoan erne ziran; baina eguzkiak jo orduko, erre egin ziran eta, sustrairik ez ebelako, igartu.

Beste hazi batzuk sasi artean jausi ziran, eta sasiak, haztean, ito egin ebezan haziak. Gainerakoak lur onean jausi ziran, eta frutua emon eben: bateko ehun nahiz hirurogei nahiz hogeta hamar. Belarririk daukanak, entzun dagiala».

Jesusengana hurreratu eta itaundu eutsoen ikasleek: «Zergaitik egiten deutsezue berba parabola bidez?»

Jesusek erantzun eutsen: «Zuei emon jatzue zeruetako erreinuaren misterioak ezagutzea; horreei, ostera, ez. Izan be, daukanari emon egingo jako eta gainezka izango dau; ez daukanari,

ostera, daukan apurra be kendu egingo jako. Hara zergaitik berba egiten deutsedan parabola bidez: begiratu bai, baina ikusten ez dabelako; entzun bai, baina aditzen ez dabelako, ezta ulertzen be. Holan, Isaias profetak esana betetzen da horreengan:

“Entzungo dozue, bai, baina ulertu ez;
ikusiko dozue, baina konturatu ez.
Izan be, herri honek
gogortu egin ditu buru-bihotzak, gortu belarriak, itsutu begiak.
Ez begie euren begiez ikusi, ez belarriez entzun, ezta buruaz ulertu be,
holan Nigana bihurtu ez daitezan eta salbatu ez dagidazan”.

Zorionekoak, ostera, zuen begiak, ikusten dabelako, eta zuen belarriak, entzuten dabelako. Benetan dinotsuet: profeta eta zintzo askok ikusi gura izan eban zuek ikusten dozuena, baina ez eben ikusi, eta entzun zuek entzuten dozuena, baina ez eben entzun».

Jesusek esan eutsen ikasleei: «Entzun ereilearen parabolaren esanahia: erreinuaren mezua entzun bai, baina

ulertzen ez dauanari, Gaiztoak etorri eta kendu egiten deutso bihotzean ereinekoa. Hori da bide-bazterrean ereina.

Harri artean ereindakoa hauxe da: berbea entzutean, behingoan pozik hartzen dauana; baina, sustrairik bakoa eta iraupen txikikoa izanik, berba hori dala-eta estutasun edo erasoaldiren bat sortu orduko, berehala huts egiten dau.

Sasi artean ereinekoa hauxe da: hitza entzun bai, baina mundu honetako ardurak eta diru-goseak ito egiten deutsoe berba hori, fruturik barik itziz.

Lur onean ereina, barriz, hauxe da: berbea entzun eta ulertzen dauana. Honek emoten dau frutua: bateko ehun nahiz hirurogei nahiz hogeta hamar».

Jaunak esana.

---

Ebanjelioa era laburrean.

*Urten eban ereileak ereitera.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 13, 1-9

Egun haretan, Jesus etxetik urten eta itsasertzean jesarri zan. Eta hainbeste jente batu jakonez inguruan, txalupa

batera igon eta bertan jarri zan. Jente-taldea, barriz, hondartzan egoan. Gauza asko esan eutsen, parabola bidez berba eginez:

«Behin baten, urten eban ereileak hazia ereiten. Ereitean, garau batzuk bide-bazterrean jausi ziran, eta txoriek etorri eta jan egin ebezan. Beste hazi batzuk harri artean jausi ziran, lur handirik ez zan lekuan, eta, aixaleko lurra izanik, behingoan erne ziran; baina eguzkiak jo orduko, erre egin ziran eta, sustrairik ez ebelako, igartu.

Beste hazi batzuk sasi artean jausi ziran, eta sasiak, haztean, ito egin ebezan haziak. Gainerakoak lur onean jausi ziran, eta frutua emon eben: bateko ehun nahiz hirurogei nahiz hogeta hamar. Belarririk daukanak, entzun dagiala».

Jaunak esana.

---

# URTEAN ZEHARREKO XV. DOMEKA
## B urtean

## I. IRAKURGAIA

*Jaunak bialdu ninduan bere herriari profetizatzera.*

Amosen Profezia liburutik

*Am* 7, 12-15

Egun hareetan, Amatziasek, Betelgo abadeak, esan eutson Amosi: «Ikusle, zoaz, alde hemendik Judako lurraldera. Egin han profetarena eta irabazi zeure ogia. Baina ez jardun gehiago profetagintzan Betelen, hau errege-santutegia dalako eta erreinuko jauretxea».

Amosek erantzun eutson Amatziasi: «Ni ez naz ogibidez profeta, abeltzaina naz eta basapiku-batzailea. Abeltzain nenbilela hartu ninduan Jaunak eta bere herri Israeli profetizatzera bialdu».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 85 [84], 9ab eta 10. 11-12. 13-14 (R/. 8)

R/. **Jauna, zeure onginahia erakutsi eiguzu,**
**zeure salbamena emoiguzu.**

V/. Entzungo dot Jainkoak dinoana:
Jaunak bakea agintzen deutse bere herriari eta fededunei.

Hurrean dabe salbazinoa begirune deutsoenek;
bai, gure lurraldean kokatuko da Jaunaren aintza. R/.

V/. Maitasunak eta leialtasunak alkar dabe aurkitzen,
justiziak eta bakeak alkar besarkatzen.
Leialtasuna lurretik da ernetzen,
justizia zerutik jaisten. R/.

V/. Jaunak emongo dau euria,
eta gure lurrak ekarriko bere uzta.
Haren aurretik joango da justizia,
haren pausuei jarraituko deutse ondoizateak. R/.

## II. IRAKURGAIA

Irakurgai hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Kristogan aukeratu ginduzan Jainkoak,*
*mundua sortu baino lehen.*

San Paulo Apostoluak Efesoarrei egindako epistolatik

*Ef* 1, 3-14

Bedeinkatua izan bedi Jainkoa, Jesu Kristo gure Jaunaren Aita,
zeruan, Kristoren bitartez,
Espirituaren era guztietako ondasunez bedeinkatu gaituana!
Kristogan aukeratu ginduzan, mundua sortu baino lehen,

santu eta errubako izan gaitezan beraren aurrean, maitasunez.
Bere onginahiak eraginda aurrez eban erabagita,
Jesu Kristoren bitartez gu seme-alabatzat hartzea,
bere Seme maiteagan eskuzabal emon deuskun dohai zoragarria
gorespen-kantu bihurtu dadin berarentzat.

Seme honen heriotzaz dogu askapena,
pekatuen parkamena,
Jainkoaren onginahi eskuzabalari esker;
oparo isuri dau bere onginahiaren dohaia,
jakituria eta ezaguera osoa guri emonez.
Bere asmo ezkutua ezagutuazo deusku,
bere onginahiaz erabagita eban asmoa:
historia bere betera eroateko,
zeruko nahiz lurreko gauza guztiak Kristogan batzea,
berau buru dala.

Kristoren bitartez gara oinordeko gu be, israeldarrok, lehendik Mesiasengan itxaroten genduanok, gauza guztiak

berak nahi lez egiten dituan Jainkoak aurrez aukeratu gaitu-eta bere asmoaren arabera, beraren aintzaren gorespen-kantu izan gaitezan.

Eta zuek be egiaren mezua, salbatzen zaituen Barri Ona, entzun eta Mesiasengan sinistu dozuenok, agindutako Espiritu Santuaz zigiluz lez markatuak izan zarie. Espiritua da hartuko dogun ondarearen segurantza, Jainkoak bere egin dauan herria askapen osora helduko danaren segurantza, Jainkoaren aintzaren gorespen-kantu izateko.

Jaunak esana.

---

II. irakurgaia era laburrean.

*Kristogan aukeratu ginduzan Jainkoak, mundua sortu baino lehen.*

San Paulo Apostoluak Efesoarrei egindako epistolatik

*Ef* 1, 3-10

Bedeinkatua izan bedi Jainkoa, Jesu Kristo gure Jaunaren Aita,
zeruan, Kristoren bitartez,
Espirituaren era guztietako ondasunez bedeinkatu gaituana!
Kristogan aukeratu ginduzan, mundua

sortu baino lehen,
santu eta errubako izan gaitezan beraren aurrean, maitasunez.
Bere onginahiak eraginda aurrez eban erabagita,
Jesu Kristoren bitartez gu seme-alabatzat hartzea,
bere Seme maiteagan eskuzabal emon deuskun dohai zoragarria
gorespen-kantu bihurtu dadin berarentzat.

Seme honen heriotzaz dogu askapena,
pekatuen parkamena,
Jainkoaren onginahi eskuzabalari esker;
oparo isuri dau bere onginahiaren dohaia,
jakituria eta ezaguera osoa guri emonez.
Bere asmo ezkutua ezagutuazo deusku,
bere onginahiaz erabagita eban asmoa:
historia bere betera eroateko,
zeruko nahiz lurreko gauza guztiak Kristogan batzea,
berau buru dala.

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Ef* 1, 17-18

R/. **Aleluia.**
V/. Jesu Kristo gure Jaunaren Aitak
argitu dagizala gure barruko begiak,
jakin dagigun zer itxarotera dei egin deuskun. R/.

## EBANJELIOA

*Jesus Hamabiak bialtzen hasi zan.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 6, 7-13

Aldi haretan, Jesus Hamabiei dei egin eta binaka bialtzen hasi zan, espiritu gaiztoak botatzeko ahalmena emoten eutsela. Biderako ezer ez hartzeko agindu eutsen, makila besterik: ez ogirik, ez zakutorik, ezta dirurik be garrikoan; oinetan sandaliak eroan egiezala; baina aldatzeko soinekorik ez.

Gero, zelan jokatu esan eutsen: «Etxe baten sartzean, gelditu bertan herri haretatik urten arte. Eta non edo non onartzen ez bazaituee eta entzun gura ez badeutsuee, handik alde egitean, astindu zeuen oinetako hautsa, hareen kontrako seinaletzat».

Joan ziran, bada, Hamabiak eta Barri Ona iragarri eben, jentea bihotzbarritu zedin. Deabru asko botatzen eben eta gaixo asko osatzen, olioz igurtziz.

Jaunak esana.

---

# URTEAN ZEHARREKO XV. DOMEKA

## C urtean

### I. IRAKURGAIA

*Esku-eskura dozu hitza, bete dagizun.*

Deuteronomioa liburutik

*Dt* 30, 10-14

Honan berba egin eutson Moisesek herriari: «Obedituko deutsazu Jaunari, zeure Jainkoari, legearen liburu honetan idatzitako beraren aginduak eta legeak betez, eta bihotz-bihotzez eta gogo osoz bihurtuko zara Jaunagana, zeure Jainkoagana.

Izan be, gaur nik emoten deutsudan agindua ez da zure indarrez gaindikoa, ezta eskuratu ezina be. Ez dago zeruan, zuek hau esateko: "Nork igongo dau zerura, agindua ekarri eta guri jakinazoteko, bete ahal dagigun?" Ez

dago itsasoaz bestaldean be, zuek hau esateko: "Nor joango jaku itsasoaz bestaldera, agindua ekarri eta guri jakinazoteko, bete ahal dagigun?" Izan be esku-eskura dozu-eta hitza, zeure ahoan eta bihotzean, bete dagizun».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 69 [68], 14 eta 17. 30-31. 33-34. 36ab eta 37 (R/. ik. 33)

R/. **Izan bihotz, apalok,**
**Jainkoaren bila zabiltzenok!**

V/. Nik Zuri dagitsut otoitz;
mesede-sasoia dozu, Jauna.
Erantzun, ene Jainko, zeure maitasun handiaz,
zeure salbazino leialaz.
Erantzun, Jauna, samurra da-eta zure maitasuna,
bihurtu nigana begiak zeure erruki handiaz. R/.

V/. Ni, barriz, gizajo atsekabetu hau,
indarbarritu nagiala, oi Jainko, zure salbazinoak.
Jainkoaren izena kantuz dot goratuko,
esker onez handietsiko. R/.

V/. Ikusi egizue, apalok, eta poztu,

izan bihotz Jainkoaren bila zabiltzenok.
Izan be, entzuten deutse Jaunak behartsuei,
ez ditu gitxiesten berari lotuak. R/.

V/. Salbatuko dau, bai, Jainkoak Sion,
eraikiko ditu barriro be Judako uriak.
Jainkoaren zerbitzarien ondorengoak izango dira oinordeko,
haren izena maite dabenak han biziko. R/.

Edo:

*Sal* 19 [18], 8. 9. 10. 11

R/. **Jaunaren arauak zuzenak dira,**
**bihotzaren pozgarri.**

V/. Jaunaren legea bikain, barrua arnasbarritzen dau;
Jaunaren mandamentua fidagarri,
heldubakoa zuhur egiten dau. R/.

V/. Jaunaren arauak zuzen, bihotzaren pozgarri;
Jaunaren agindua distiratsu, begien argigarri. R/.

V/. Jaunaganako begirunea garbi, iraunkor betiko,
Jaunaren erabagiak egiazko, dan-danak bidezko. R/.

V/. Urrea, urre araztua baino desiragarriago,

eztia, ezti barria baino gozoago. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Sortua izan dan guztiak*
*Kristo dau eredu eta helburu.*

San Paulo Apostoluak Kolosarrei egindako epistolatik

*Kol* 1, 15-20

Jainko ikusezinaren irudi da Kristo,
sorkari guztietan lehen-sortua.
Haren bidez sortu ebazan Jainkoak
zeru-lurretan diran gauza guztiak,
agiri diranak eta ez diranak:
munduan eragina daben ahalmenak,
nagusitzak, aginteak eta botereak;
sortua izan dan guztiak Kristo dau eredu eta helburu.

Gauza guztiak baino lehenagokoa da bera,
eta berari esker diraue.
Bera da gorputzaren buru, Eleizearena, hain zuzen be.
Bera da hasiera, hildakoen artetik lehen-biztua,
gauza guztietan bera izan dadin lehenengoa;
Jainkoak nahi izan dau-eta
bere izaeraren betea Kristogan egotea,

eta honen bidez gauza guztiak beragaz adiskidetzea,
Kristok kurutzean isuritako odolaz bakeak eginez
zeruko eta lurreko gauza guztiekin.
Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Jn* 6, 63c. 68c

R/. **Aleluia.**
V/. Zure hitzak, Jauna, espiritu eta bizi dira;
zure hitzek betiko bizia dabe. R/.

## EBANJELIOA

*Zein da nire lagun hurkoa?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 10, 25-37

Aldi haretan, lege-maisu batek jagi eta azpikeriaz itaundu eutson Jesusi: «Maisu, zer egin behar dot ondaretzat betiko bizitza jasotzeko?» Jesusek esan eutson: «Zer dago idatzita Moisesen legean? Zer irakurtzen dozu?»

Harek erantzun: «Maitatu egizu Jauna zeure Jainkoa bihotz-bihotzez, gogo osoz, indar guztiz eta adimen guztiz;

eta lagun hurkoa zeure burua lez». Jesusek erantzun eutson: «Ederto erantzun dozu. Bete hori eta bizitza izango dozu». Baina, lege-maisuak, itauna bidezkoa zala adierazo nahirik, esan eutson Jesusi: «Eta nor da nire lagun hurkoa?»

Jesusek, orduan: «Behin baten, bajoian gizon bat Jerusalemdik behera Jerikorantz, eta lapurren eskuetan jausi zan. Lapurrek, eukazanak kendu eta, egurtu ostean, alde egin eben, erdi hilda itziz. Hatan be, abade bat gertatu zan bide haretan behera eta, gizona ikusi ebanean, bidetik baztertu eta aurrera jo eban. Beste horrenbeste egin eban handik igaro zan tenpluko lebitar batek be: ikustean, bidetik baztertu eta aurrera jo eban.

Baina bidaian zan samariar bat bertara heldu eta, ha ikustean, errukitu egin jakon. Hurreratu eta zauriak lotu eutsozan, olioz eta ardaoz igurtzi ostean; gero, bere asto gainean jarri, ostatura eroan eta bere ardurapean hartu eban. Biharamonean, zidarrezko txanpon bi atara eta ostalariari emon eutsozan, esanez: “Jagon egizu eta,

gehiago gastatzen badozu, hurrengoan natorrenean ordainduko deutsut”.

Zure ustez, hirurotan zeinek jokatu eban lagun hurko lez lapurren eskuetan jausitako gizonarekin?» Lege-maisuak erantzun eutson: «Haretaz errukitu zanak». Jesusek esan eutson, orduan: «Zoaz eta egin zeuk be beste horrenbeste».

Jaunak esana.